# Zumalakaŕegi

Edestiari buruz
zortzi bertso-saletan
eratutako

# poematxoa



Zubimendi'tar Joseba

1935



# ZUMALAKAŔEGI

"Limosnatxo bat"
bertso-doñuakin
abesteko.

Gudara
zertara...?

Ene asaben oroitz-arnasa
atoz nerekin lantzera,
mila zortzireun ogeitamairun
gerta zana argitzera!
Eusko zeruko goiargi zabal
atozkit aize ematera!
Aztutze beltzan galdu ez dedin
bertsotan nua jartzera
Ormaiztegi'ko Zumala aundien
aŕigaŕizko izakera.

Ikus dezagun orduan nola
zegoan Euskaleŕia.
Iñoren menpe gaberik, ura
zorioneko garaia!

Baldin Lapurdi ta Zubero'en
nagusi ba'zan Frantzia,
ona Gipuzku eta Napaŕa,
naiz Araba ta Bizkaia,
eusko Abeŕi egoaldea
azkerik zegon guzia.

Ez al diozu eŕi oneri
min itxurikan arkitzen?
Bere izkera aintzagaŕia
ara nola duan galtzen.
Ta zertzaz dira Euskaleŕi'ko
aundiki oiek mintzatzen?
A...! Españi'ko bakaldun zaŕa,
Fernando, omen dago iltzen
eta Isabel edo Carlos, zein,
jaŕiko duten agintzen.

Zer ajol dio euskaldunari
Españi'ko bakalduntza?
Zergatik ango gauzak utzita
ez begiratu onuntza?
Napoleon'en gudalozteak
bialdu ziran aruntza ;
baña aundikiak Españi kutsuz
dauka geroztik biotza
eta, tamalez, ortikan dator
Euskadi'ren eriotza.

Lengo Oñaz ta Gainboa'k kalte
aundik zituzten ekaři;
orain Madrid'en bat edo beste
bakalduntzarako jaři
ardurik ezta, euskaldun auek
zertan dabiltza ain laři?
Nolatan daude goiki gizonak
gudan sartzeko egaři?
Ene Jainkoa! Itxu dabiltza!
Ene, au bai negargaři!

Utzi besteren eřiak orain
ta batu eusko guziak!
Ez al zaizkitzu oroitzen gure
abenda zařen auziak?
Ařotzen oñak ez dituztela
zapaldu gure mendiak
ta eřomatar, godo, maomar,
ludi guztiko nausiak
izan dirala, eusko indařez,
beti ta beti ausiak?

Oroitu zaite bizkaitar orok
Ařigořiaga'n egiña,
oroi beřiro, Ořeaga'n nola
zuten egintza berdiña.
Ordun ziñopak odolez zuten
gugatik busti lurgaña.

Eutsi ba orain! Etzaitez izan
ero ta buru ariña ;
utzi zaiozu konpon dedila
nai duan eran España!

Bañan zer dakust? Ara euskoak
atzipetuta, ustetan,
beren eŕia galzorin dala.
Egoak damaz oñetan!
Zeñek oŕela iruzur ditu?
Zeintzu dabiltz lan oietan?
O! Abeŕia jartzera doaz
negarte samin beltzetan
ta berak gero eskako dio
kontu zoŕotza benetan.



II

Doñu eŕikoia.

Emen degu gudalburua.

Ilunabaŕa degu
argia gordetzen
dijoala, ludia
beltzez zaigu jazten.
Iruña'ko aŕesi
zubia da jexten
eta Arga ibaiorutz
ara zein datoŕen.

Burua makurtuta,
luŕera begira,
gainjanzkien eskutuz
Irurzun urira
zein dator apalkiro?
So bere janzkira!
O! Zumalakaŕegi
dator bere eŕira!

Iruña'n utzi ditu
bere emaztea,
alabatxo kutunak
ta ongi izatea.
Zergatik atsegiñen
truk artu nekea?
Zer ote dan eŕia
maite izatea!

Ortxe bide erdian
dauka beor bat zai;
arin doa gañera
ametskor eta alai.
Esporeak sarturik
tximista laxterkai
dirudi. Emen degu...
Ongi etoŕi, bai!

Aspalditik zai zegon
zure Abeŕia
ta zenbat maite dezun
emen agiria.
Zure izen ospetsu
ta aintzagaŕia
guziak maite degu.
Ongi etoŕia!

An Zumalakařegi!
—dio gudozteak—
Ongi etoři! Gora
euskotar semeak!
Azke izan nai degu
emengo jendeak.
Zenbat pozten gaitun zu
emen ikusteak!

Oiartzunak beřizten
du alde danetan
gudarien zantzo au,
zoko ta gañetan.
Ongi etoři! dio
otsak mendietan
Ongi etoři! ibaiak
ur eresietan.

Bañan gizon artean
beti dago griña
txařa ta alkar ongi
ikusi eziña.
Ituřalde zan lengo
buru azgiriña;
onekin ezpatzea
zan gauza jakiña.

Bañan euskaldun orok
Zumala goguan
ibil̄iaz, daukate
biotzen baŕuan.
Oŕela Ituŕalde'k zer
zezaken orduan?
Agintzaren burua
bertan utzi zuan.

Guda mutil̄en buru
da gure gizona
ta eusko gudaria
amesten dagona
ez da Carlos bakaldun
ajola zaiona,
baizikan irixtea
euskal zoriona.

Bere semetzat laxter
da aŕo Ormaiztegi,
ospatsuena bai du
Zumalakaŕegi.
Edestera nuana
ba'zaizu latzegi,
jakin zazu guzia
dala emen egi.



III

Kerexeta'ren
"Oŕeaga"
olerki neuŕiz.

Guda asieran.

Zortzireun mutil ditu gudarako zutik,
anitz etoŕi zaizka Napar ingurutik.
Guda janzkirik ez ta goseak aulduta,
otzak, kemenik gabe, oñak odolduta,
dijoaz nastuta ;
bañan oñez dutela Zumala auŕetik
beraren bildur-ezak ditula arnasten,
bulartsu, arin doaz guziak abesten.

Adiskideak ditu Napaŕu mendiak,
zuaitz, eŕeka, zulo, esi, eloŕiak.
Etsaiak nai ba'dute berengana eldu
lenen areio auek bear ditu kendu
edo ta aldendu.
Bañan eusko semeak dabilzten laŕiak!
Su-izkiĺurik ez ta, dunak, balarik ez....
Berentzat lirake, ba, nun diran jakitez!

Ona mutil gazte bat Zumal'en auŕean,
aŕenka, sar nairikan bere gudoztean.
—Zertan joputu nai dek?—egin dio galde.
—Zaldikari nai nuke, baldin al ba'leike...
—Zaldi gabe gaude.
—Ongi da—ta aldegin du. Ilunabaŕean
emen dator beŕiro.—Ara ne zaldia,
etsaiari kentzean galdu nintzan ia!

Mutil onen antzera zenbat ote datoz. . .
eusko biotzak orain su ta gar bai dagoz.
Odol margo txapela dunak egiten du
armarik ez ba'dauka dagonetik kendu,
naiz an odol galdu. . .
Etsaiak gaur gabean asetzen daude loz.
Auek bai deukatela guda tresna pila.
Orain iluna degu. Goazen bada bila.

Bañan ilun beltzean nolaz ezagutu
alkar eta etsaiak gutatik bereztu?
Tamala litzake ba, usterik ezean,
nastuta anaien bat gauen ilunpean
erailtzea guk an. . .
Ara gu berezteko gauza aukeratu!
Jaŕi ditzagun danok jantzi beltz gañetik
azpian damazkigun alkandora zurik. . .

Zer dakuste begiok? Zer dago Zubiri'n?
Ilunpe lor onetan zer dabil arin arin?
Or zomoŕo zuriak dabiltza biraka. . .
Ene, izkilu otsa! Ara kaŕaxika. . .
Jendea koŕika. . .
Orain turuten otsa entzun da belardin.
Alkandora zuriak onuntz azkar datoz...
Zubiri'ko eŕia ixildu da geroz.

Algara lasaituak datoz mendin gora,
laxter datorgu otsa geronen albora.
Jesus, zenbat ixkilu! Zenbat kutxa bala!
Gizonak bizkaŕetan eziñik zama ala.
Pozik da Zumala
ta esker itz xamuŕak datorzki aora :
—Egintz ontan mutilak ongi irabazia
dezute nere eskeŕa ta atseden luzia.

Eta, atsedentzeko, ez da ordu txaŕa,
geienak ba-dezute oŕetxen beaŕa.
Zuen loa zaitzeko, izanik euu begi,
Ormaiztegi'ko Tomas Zumalakaŕegi
emen dabil argi.
Ezpañetan dabilki eŕekin belaŕa,
urduri da gizona zuen inguruan,
ba-du guda garaitze asmon bat buruan.

Beŕogei ta bost urte damazki gañean,
oldoz garbia ager du kopet labañean.
Bizar ta buru-il̃ea anai besarkatzen,
txapel goŕi zabala burua estaltzen
ta andik kulunkatzen
zil̃aŕezko borla bat, dizdiz jostatzean,
Laŕuzko zamar beltza ertz goŕiarekin,
loki apañak ditu uŕe kakotxakin.

Esporeak dirdiraz, ezpata geŕian,
eder agertzen zaigu gabaren erdian.
Sorbalda zabala du ta lepo lodia,
il̃e beltz antzekoa, urdintsu begia,
itzal bekokia.
Itz gutxiko gizona, gudan ta pakean.
Asmo beŕin bat beti dabilkila burun,
par gutxiko gizona, beti dabil itun.

Bañan euskal semeak buru daukatena
zer da, azti, sorgin, guzi lezakena?
Bere abotsen deiaz, bilduŕak aztuta,
eriotzaren bil̃a dijoaz sututa
denak itxututa
ta begiratu utsez menpetzen du dena.
Salatari bat eldu da dagon tokira
ta ixilik esan dio zerbait belaŕira.

Aŕatseko nekeak azpiratu gabe
goiz izpiak arki du buruaren jabe.
Gizonak esan dio: —Etsaiak or gora
jate gauzak damazki, janzki ta bolbora...
—Ordun goazen ara,
guretzako ditugu astinduz goi ta be!...
Goiz deia jo baño len zaldizko mutil̃ak
mendian gora doaz eskutuz ixil̃ak.

Burni makil zoŕotzak dizdiz argiakin,
beso bil̃uz gogoŕak bular sendoakin,
basatien antzera zantzo ta aoiuka,
zaldiak iŕintzi ta guziak oŕuka
dijoaz buŕuka,
ikusia bai dute etsaia zamakin...
Axut!—dio Zumala'k—Ekin ortik gogor!
Bertatik ekin gabe ez da gelditu iñor.

Ta beŕogei basati aiek zaldietan
beŕeunen aurka doaz gudu aldi ontan.
Au ezpataren otsa! Au alkar jotzea!
Ara luŕean bat or, an doa bestea...
Ori jokatzea!
Zein ote da nagusi gaurko gudaketan?
Euskoak atzeraka datozte aldentzen...
Ene, aldi onetan bai dutela galtzen!

Baña norena degu, ausirik guzia,
bakarik auŕeraka zaldizko zuria?
Ai! Zumalakaŕegi auŕean jaŕirik,
Axut!—dio beŕiro— ezpata igiturik.
Ez geigo laŕirik ;
ura an ikusita gurea da auzia ;
napartaŕen odola jaŕi da irakiten
ta beŕiz auŕeraka diote ekiten.

Andik laxter dijoa euskoen aldera
etsaiak berentzako zuten zama bera.
Guda-mutil beŕiak ba-dute fusila,
zaŕak janzki beŕiak. Zenbat bala mila!
Joan bai dira bila
zeuden lekutatikan arin ekartzera.
Eusko zaldikaŕiak zein kementsu diran....
Ez da jaio besterik egundo lurbiran!

Oŕela du Zumala'k gudoztea geitzen,
bere esana zintzoki bai dute egiten.
Gutxitikan asita, gero ta geiago,
gaur guda-mutil sala ugaria dago
ta indartsuago.
Ara bi gudalozte alkar puŕukatzen.
Zergatikan ordea dabiltza euskoak?
Beren ustez zaitutzen asaben Fueroak!



IV

"Basaŕi" bertsolariak oitura dun doñuz.

Indartu dira euskotaŕak.

Asieratik gudari gutxi
ba'zegon Euskaleŕi'an,
ikusi orain Zumala bidez
ozteak, zutik, salian.
Zenbat nekekin bilduak ditu
gose utsaren erdian!
Gaur Españi'ko gudalburuak
maiz jartzen ditu laŕian.

Liberal auek partetan beti
azaltzen dira nagusi;
baña gureak guda-luŕean
geien alditan du ausi.
Orain Zumala apur dutela
diote; bañan ikusi,
esan ondoren, bere auŕean
nola dabiltzan igesi.

Gaur Espartero da etsaien buru,
eusko saltzal̄e zitala!
Ustetan ba'da eusko mutil̄ak
mendi onetan dirala,
ementxe dator izugaŕizko
gudozten jaberik dala
eta aŕiturik ikusiko du
mendia utsikan dagola.

Bañan lasaiki baldin ba'dago
alpertuz atsedenetan
laixter euskoak gañean ditu
usterik gutxienetan.
Amoŕaziaz, nekatu arte,
beti gezuŕen ustetan,
zenbat izeka egin dizkio
Zumala'k leku auetan!

Gazteitz'en sartu nai du Zumala'k
eta laxterka dijoa.
Bai sartu ere egiñik ordun
beti lez bere gogoa.
Gaurko ontan ere ongi utzi du
Espartero gizajoa ;
bertan etsaiak erail ondoren,
or guda tresna naikoa!

Zer gertatzen da liberaletan
ainbeste buru aldatzen?
Bein Rodil dala, Valdes uřena,
gaur Oraa'k ba'du agintzen,
biar Linares edo Cordoba
ordezko diote jartzen.
Etsai guziak eřaz bai ditu
gure Zumala'k menpetzen!

Gudalbururik izentsuenak
dakarzte beti onuntza;
naiko jendea guda tresnakin,
berak nai aña dirutsa
izanagatik; alare beti
euskoentzat nagusitza.
Guda izkiĺu ausartsuena
bai da euskaldun biotza!

Emengo seme ezikaitz auek
nolaz orduan garaitu?
Ainbeste kalte damaion guda
nolaz España'k amaitu?
Bere ospea, galtze onekin,
zapalduta ikusi bai-tu.
Orain eskeintza zoratzaĺeak
egiñaz ausiko ditu...

Or Espartero buruzagia
Ernani'n nun dan azaltzen.
Ta Fueroa zainduko dula
ara nola dun agintzen.
Esaten digu iñor Españi'n
aurka ba'zaio ausartzen
lenengo bera izango dala
ezpatarekin gordetzen.

Lengo eskeintza alpeŕikako
izandu dala ikustean,
Zumala'n anai Mikel bitartez,
dirua nai dun añean
eskain diote, Euskaleŕi'tik
aldendutzeko ustean.
Bañan orduan saltzal̃erikan
etzan euskoen artean!

Etorkizuna margo beltzetan
diote gero azaldu;
Emazte ona uŕuñen dauka
alabatxo bat du galdu.
Min-aldi onek gure Zumala
garaituko ote al du?
Eusko gudari zintzoa iñon
ez da ezergatik saldu!

Ukatze onek jaŕiak ditu
amoŕuaz irakiten ;
su, odoletan alde guziak
geroztik dituzte jartzen.
Arantzazu'ko eliz edeŕa
ara an sutan kixkaltzen.
Oŕa Jauregi'k bere izena
nolatan duan zikintzen.

Olazar'en gaur zer gudu aldi
bildurgaŕia goizetik!
Egun sentia baño len oŕa
mutil̄ak erne ta zutik.
Laŕainzar'etik, Etxalar'tikan
Lekaroz ta Eŕazu'tik
guda mutil̄ak datoz laxterka
alderdi guzietatik.

Irurita alde ta Elizondo
bereak ditu Zumala'k ;
mendaitz goienak, muño goŕiak,
arkaitz, aritz ta makalak,
etsai oztea zaitu itxuran,
zutiñik, bañan argalak
daude, egunero zulaturikan
euskaldun etsaien balak.

Egoardi baña len asi dute
biak turuta soñua.
Kañoi dunbotsa gortu zorian!
Aotik darion sua!
Buru gañetan nabaitutzen da
bala maltzuŕen txistua ;
noiznai iĺikan mendian bera
gudarien bat dijua...

Orain euskoak eraso dio
adore biziz jaŕita.
Ikaragaŕi ango buŕuka!
Bañan atzenik etsita
an doa iges arerioa,
bere izkiĺuak utzita,
edo geldi da gajoa iĺotzik
bertan begiak itxita.

Bidaso ibaiko ziĺar margoak
odolez goŕitu dira.
Zenbat itzulti eror diraden
odol goŕian erdira!
Igeslariak sartu dituzu
itxurik amildagira
ta odol goŕiz nastuta doaz
ibaien leku amaira.

Gaua datorgu. Zenbat bizitza
bertan gelditu dirala!
Luŕa iĺotzez ereinda dago...
Auxen bai gauza tamala!
Gaur eguzkiak ikusia du
giza-goŕoto zitala
ta lotsaturik iĺunpetara
igestu da bereala.

Baña inguruan Carlos eŕege
agertu beŕien jaiak
ospatzen dira bitarte ortan.
Gertatze negargaŕiak!
Euskoak gudan ixurtzen beren
zañetako odol goŕiak
ta aŕotz arentzat jaŕi dituzte
jostatze pozkor alaiak...!



V

Bilintx'en
"Juana Bixenta Olabe"
doñuz abestu bedi.

Gorotoa.

Euskaleŕi'ko eliz batean
otoitzak egiten dauden unean
lekaide batzuk, anker jendeak
erail dituzte, biotz gabeak.
Ene Jainkoa!
Geroztik ziñezpen duan euskoa
geiago suturik gudara doa.

España agintzen daudenak buru,
Mina digute orain aukeratu
guda zital au amaitu nai-ta ;
eusko mendien ezagun baita
ta kementsua.
Orain ba'dabil naiko zartua
maltzuŕa da ta entzutetsua.

Leno Zumala mendeko izanik
ikasi zituan bere artezik.
Orain dijoaz alkar neurtzera.
Zar jakituna da Mina bera
ta azeri zaŕa ;
bañan Zumala'k legoien gaŕa
antzera dauka gaztedi indaŕa.

Beŕiz gudako tresna eskasin!
Nun eta nolatan azkaŕik egin?
Baztan menditan ta Etxalar'en
arkaitz zulotan ara egiten
ontako olak.
Antxe sutunpak, sutautz ta balak
egingo ditu gure Zumala'k.

Ingurutako eliz kanpaiak
mututu dira, ta beraren gaiak
labe goŕitan daude suturik.
Geroxeago danak urturik,
an guda tresnak!
Sutunpa beŕi, bala zuzenak,
gudan garaiĺe jartzen direnak.

Azaroa da. Negua bertan.
Gudua iŕintzika mendi gañetan.
Napaŕua'ko Villafranca an
dago aŕorik axut aupadan.

Emen axutka?
Ekaitz antzera txistu oŕuka
an dijoazte. Ura buŕuka!

Elizan gorde dira aldezleak,
berekin dituzte sendi maiteak,
Sunpaka gogor eliz baŕendik,
erantzun berdiña zeukaten lendik!
Ene, zer sua
itsas dioten! Laxter dijoa
goitik luŕera eliz osoa!

Kupitu zaigu Zumala beŕa
eta ba-dijoa aldegitera;
bañan an dator Carlos aginduz
austeko dana odol eta suz.
Oroitz ituna!
Suzko mingañak ta ke astuna,
argi goŕitan gaueko iluna!

Baŕun daudenen aur kaŕaxiak
eta emakume laŕi antsiak
zein ez luteke biotz-berako?
Bañan eŕegek esan dulako
su eta gaŕak
ba-dirudite inpernutaŕak
geituz ta geituz. Ango negaŕak!

Zumala dabil er̃ukituta
eta galzoriak ar̃unt aztuta,
bere aginduz, aurtxo andreak
azka dituzte eusko jendeak.
Gure gizonak
ager dituzte biotz nai onak
ta urko maitasun sustrai sakonak.

Egun auetan zaldikariak
ar̃oki dabiltza sutan jar̃iak.
Euskotar̃ena gogor axutka
ta liberala andik itzulka.
Eta iñondikan
ez dute ematen erantzunikan...
Ez bai daukate ausardirikan!

Baña ausardia Mina'k ba-dauka
Napar̃u semeak iltzeko sailka.
Lauz'ko mendian, erdi gordeta,
sutunpa zar bat, ausiz beteta
arkitu dute.
Zeñek aruntza eraman ote,
ta besteak nun gorde dituzte?

Aur̃eko gabez mendi artatik
sua zerioten eten gaberik.
Baña nun dira kañoiak ordun?
Lurpean gorde ba'dirade, nun

dituzte sartu?
Iñon zar ura beste ez da agertu,
geion aztarnik ez dute sortu.

Mendi semeak bere aurera
ekariaz egin du galdeera;
bañan ez dio iñork erantzun:
ango gizonak ez dakite nun
gorde zituzten
ta ba'lekite ez dut sinisten
esango zanik. Il naiago len!

Zigor minkorez estu-azita
batek esan dio gaixo jarita;
—Itzaiak gera eta beiakin
igo ginduzen; bañan ez jakin
zein lekutara
begiak zapiz itxutuz, nora
ikusi gebe, jo gendun gora.

Ordun amoruz, ikusirikan
etzeukala ezer jakiterikan,
izkiluz erail zeritzatela
agindu zuan, suz, beriela
ta bei gaixoak,
gizon laguntzan zartutakoak,
berdin il zitun, zital gaixtoak.

Ta bitartean iritxi-beŕi
Don Carlos an dabil eŕirik-eŕi
aintza ta jaiak nunai dirala.
Ustetan ote beretzat dala
Euskaleŕia?
Euskoak maite du Abeŕia
ta eskein dio duan guzia.

Jaitan igaro da Egoaŕi
ta orain iritxi da Urtebeŕi.
Etsedenean Uŕetxu'n daudez
iñon gudarik ez ba'lego lez.
Bitarte ontan,
Aŕasate'ko inguruetan,
ara amar mila liberaletan.

Bergara'n bildu dira goizetik
ta ara nun datozen mendi gañetik :
Caŕatalá or, Lorenzo albuan,
begira Jauregi nundik dijuan
ta Espartero.
Danak batean bilduta gero,
onuntza datoz indartsu, bero.

Zumala'k artu du Ormaiztegi,
bere eŕia du eta maitiegi
besten eskutan eŕaz uzteko.

Ekin diote emen sartzeko
bañan alpeŕik.
Oŕetarako ez dute indaŕik.
Ez da sartuko aŕotz ankeŕik!

An Gabiri'ko mendien gaña
Anzuola'tik Lierni aña
dago etsaiez aŕunt beteta.
Eusko mutil̃ak jaiki dire ta
ara or gertu.
Etsaiak aŕoki ba'dira agertu
bertatik nai du gureak neurtu.

Euskotaŕetan zaldi zuririk
nola ez dago bakar besterik?
Zumala dua bere gañean.
Beste guziak azaldutzean
il̃ak dituzte,
beti Zumala zalarik uste,
alde guzitan bera dakuste.

Eraso dio dunbako otsak.
Astintzen dira gaurkoan otzak!
Gipuzkoa'ko gizon sendoak,
entzun araziz guda zantzoak
or nun doazen.
Tiroka dabiltz an eta emen.
Ene zein gogor ari diraden!

Gureak iru mila dirala
lari dabilte orain Zumala;
baña Ituralde napararekin
Buruntza'tikan laguntzarekin
ementxe dator.
Oi, zer buruka dabilkiten or,
orain bai guda eraso gogor!

Ara Lorenzo orain igeska,
kutsutu zaie bildur ta kezka.
Espartero'ren mutil bapoak
zertan dituzte orain zankoak?
Laxterka biziz
itzulka doaz ikara lariz,
euskoa atzetik jaraika beriz...

Zenbat gorputz-il alkaren gainka,
bele beltzak an dabiltz usainka.
Gaur erasoak zer su ta gara!
Zumala'k dauka bere zamara
zulaturikan
eta izkiluen suz ererikan.
Ia bizitza zun galdurik an!

Uren egunaz leio batean
dago Zumala pake-pakean.
Guda mutilak dabiltz, an-emen,

batzuk pelotan leiaz jokatzen.
Au gentza itxura...
Bañan zer da ango kanpai soñu ura?
A! Euskadi'ko antxin oitura...

Din, dan... eskiĺak; din, dan... beŕiro.
Zer entzuten da oŕen argiro?
Din, dan... oiartzun. Egoardia!
Ona geldirik pelotaria...
Ken du txapela!
Agur Miren bat otoitz ta bela
pelotan daŕai, leno bezela.



VI

**Xenpelar'en bertso neuŕiz.**

**Negar ta odola etengabean.**

Orain Mina'ren adur izaŕa
jetxiaz dator itzaltzen ;
ainbeste odol, ondapenakin,
ospege zaigu gelditzen.
Napar semea izanik
etzuan izan kupirik
bere anaiak zigortzen.
Mina'n izena Euskaleŕia'k
izki beltzez du oroitzen.

Liberalen buru-nagusi
gudatsein, dagon gizona,
Valdes, datorgu. Diotenez da
buruzagirik onena.
Pozik dago Zumala
ikusiz bera dala.
Au bai da beti dagona

esanaz, nunai ausiko dula
Españi etsai aŕona...

Urte giroa otz dago oraindik;
eluŕa noiznai goitikan.
Aterpe on bat Amezkoa du
egotekotan geldikan.
Emen balarik gabe
ere beti da jabe;
ez dago iñun kezkikan.
Etsaia onuntz ausartzen ba'da
ez du izango onikan.

Bañan ez dauka luzarorako
lekuan atsedentzerik;
Buruntza igaroz, Valdes an dator
jaŕaituz bere atzetik.
Dena biŕintzekoa
debilkiten gogoa!
Mina zitala zalarik,
bera bañore odol zalego
datozte biotz gaberik.

Amezkoatar sendi guziak
igeska ikaratuta,
bei, arkumeak, ardi, beoŕak
al dan bezela bilduta;

aurak lepo gañean,
janak saski betean,
etxeko tresnak artuta,
ero zorian doaz uruti,
itxaropena galduta.



Oñaze latza ematen digu
amezkoatar jendeak...
Amoña zarak, ilobarekin
arintzen ditu nekeak.
Ara aurtxo txikia,
orain jaio beria,
negar goritan goseak!
Gazteak itun, zartuak makal...
Ora gudaren kalteak!

Zumala'rekin andre zartxo bat
ona nun zaigun agiri;
semetxo batek laguntzen dio
eskutik bere amari.
—Zer nai dezu andere?
—Jauna: or ditut nere
beste seme bi, ta zuri
eska nai dizut beste au ere
artzeko zukin gudari.

Aritu zaigu gure gizona
eskaera au ikusiz;

eskertu dio amari bere
gogoa eta, eřukiz,
dirutan sarituta
mutila artu du ta
gudariak ermo jařiz,
ama igaro du buruzagien
ospeak artu araziz.

Euskoak orain Eulate'n daude
gorderik arkaitz tartean.
Zumala aginduz banatu dira
mendi azpi ta gañean,
ibar eta zulotan,
inguru guzietan.
Anitz euskaldun danean!
Ta zai daudezte, Valdes ikusiz,
jausteko ausar betean.

Or dabil bera onutz-araka
baso tartean galdurik ;
jatenik gabe, egaři-gosez,
ezin arkituz etsairik.
Zenbat ditu atzean?
Eta zenbat ertzean?
Ezin artu du itxurik!
Eta nora jo? Atzera? Auřera?
An dabil atzipeturik!

Onuntza jota, usterik gabe,
ara zauritu sei mutil;
aruntztik beŕiz, bala zoŕotzaz,
gaur dizkiote amar il.
Ageri ez dira-ta
nundik, orde, tirata?
Etsaia nundikan dabil?
Inpernutaŕak al dira edo...
Au bai duala katramil!

Zer dabil orain Valdes, nastuta?
Nurutz dijoa ain laŕi?
Mendi auetan ez lezakela
egin ezertxo du igaŕi.
Ta ziaro aulduta,
oso ikaratuta,
goseak eta egaŕi,
Lizaŕa aruntza, buru makuŕez,
dijoa gaur lotsagaŕi!

Bañan euskoak ez dio utzi nai
oŕela, lasai, joaten;
luŕe eŕaitikan, goi eta betik
bat-batean dira azaltzen.
Ura bai ixkamil̄a!
Il̄otzik daude mil̄a
ta alare, beti jaŕaitzen
doaz gureak, iges duana
nunai pil̄aka zauritzen.

A! Nola diran ariñeketan
Lizaŕa'n sartu biziak!
Burutik bera loi ta odolez
datozte danak josiak.
Arnas gabe, eŕenka,
okertuta, aŕenka
dabiltza orok ausiak.
Zer astiñaldi artu duten gaur
liberal mutil guziak!

Amezkoa du gure Zumala'k
jaŕi beŕiro pakean
ta Gipuzko'ra bere oztea
ekaŕi du gau batean.
Eŕi nagusienak
nai dituzte berenak.
Tolosa dauka bidean,
Eibar, Ordizi eta Bergara
artu ditu une batean.

Gaua sartu da. Otza uxatzeko,
an-emen sutzar aundiak ;
ba-dirudite sutan daudela
ingurutako mendiak.
Zer irudi edeŕak,
noiznai zuzen, okeŕak
ditun ango su biziak.
Mendirik-mendi, alkar agurtuz,
an suzko mingain goŕiak...



VII

Doñu eŕikoian.

Amai mingotsa.

Negua itzulka dabil eta Udabeŕiak
jantzi apañez jaŕi dizkigu mendiak;
lore luŕin usaia, zeruen urdiña
guzia da guretzat orain atsegiña.

Arnas eta indar beŕi sortzeko giroa!
Zuaitz ostro beŕiak loratutzekoa!
Ta Zumalakaŕegi alai beaŕean,
gaxorik arkitzen da indar makalean.

Zer du gure gizonak aulik arkitzeko?
Zer gerta osasuna oŕela galtzeko?
Gudako min nekeak ez menperaturik,
nolatan orain dago gaixo ta itunik?

Egundo galzorian jaŕi ez diranak,
guda-luŕetik iges eskutun daudenak,
agintzarako leia beste ez dute-ta
bekaitzkeri zitala diote gordeta.

Min ez dio emango Batzorde lagunak
saltzea, bere bizkar goian jar ditunak?
Naigabe onek dauka samiñez beterik,
aien asmo okeŕak jar dute gaixorik.

Iŕikitzen ez dago Carlos bakalduna
noiz Madrid'en sartzeko datoŕen eguna?
Españi'n jaŕirikan maitasun guziak
zeren ajola dio euskoen auziak?

Ta Zumalakaŕegi'k zer dio gai ontan?
Anitz oldoztua du gau ta egunetan :
Españi bakalduna Carlos bezin azkar,
euskoentzat Zumala'k azkatasun dakar.

Carlos'en ametsa da Bilbao artzea
ta ango guda izkiḻuak beretzat jartzea.
Bañan Zumala'k ez du ura nai oraindik,
gauza onik ez dator, bere ustez, andik.

Lengo naigabeaz gain, orain aginduak
oztu ditu Zumala'n aginte asmoak ;
buruzagitza laga du egun artatik
ta bere etxera doa, samiñez beterik.

Bañan Carlos zer degu Zumala'rik gabe?
Zein da eusko mutiḻen gogoaren jabe?
Deitzen dio beŕiro eta txurikatuz,
Bilbao'rutz dijoa Carlos'en aginduz.

Ikus orain Zumala ixil, buru makur.
Bilbao'n sartze oŕek eman dio bildur.
Ba-dirudi biotzak esaten diola
zauri bear dun bala Bilbao'n dagola.

Gudalozteak beŕiz, ausardia gainka,
dijoa abestuaz, iŕintzi, oŕuka.
Bilbo! eskeñitako atsegin lekua,
ainbeste nekepean amestutakoa!

Ikusi dute uria. Zein eder etxeak!
Ai, zein polit dirdiraz bertako doŕeak!
Zer lil̄uragaŕiak ageri diraden...
Eup! Laxter dira berak eŕian baŕenen!

Bañan bilbaotaŕak ez daudete lotan ;
sutunpak or dituzte jaŕiak albotan.
Lau mil̄a gizon daude gertu gordetzeko
edo ta beragatik il̄ik gelditzeko.

Egun sentiko laurak dirade oraindik
eta danbor jotzea, turuta nunaitik.
Tunpaketa asi da Begoña aldean ;
tunpaka erantzun du Bilbao'k unean.

Sutunpak asi dira aŕesiak austen :
bertako gudariak zuloak estaltzen.
Iñoiz erortzen ba'da gizonen bat il̄ik,
bere lekun jartzen da beste bat ixil̄ik.

Eguzkien beroak daukazki kixkaltzen,
egaŕi-oñezeak mutiĺak itotzen.
Ez dio ardurarikan! Ekin beŕiz gogor,
Bilbao menpetzeko garaia ba-dator!

Bañan gaua eldu da eta Bilbao ori
ez da euskoen mende oraindik erori.
Sutunpen ots buŕunbak ez dute lagatzen
gau guzian iñola lorik ere artzen.

Ara beŕiz eguna argi eta alai.
Gaurkoan bai gurea izango dala, bai!
Egaka gañean da bala txistu otsa,
zenbatek arkiko du orain eriotza!

Bañan egun au ere auŕera doala
ezin sarturik dabiltz Bilbao'n iñola.
Amets au egizteko biderik bai al da?
Bakaŕa ta mingotsa : aŕesik asalda!

Zeintzu jun bear duten egiñik sosketa,
guziak batasunez auŕen nai dute-ta,
napaŕuko mutiĺei jazoa zaiete
ta amoŕuz irakiten gerturik daudezte.

Ona tarari otsa! An doaz auŕera!
Or lenengo mutiĺak zaurituz luŕera!
Nora dijoa napar bulartsuen piĺa. . . ?
Eriotzaren truke azkatasun biĺa!

Izkiluz jausi dira mutilik geienak;
atzera jo beaŕik dira beste denak...
Itxaropenez Bilbo mutilak ausartu
besterik gaurko onetan ez digute lortu.

Beste gau bat beŕiro supunpan otsakin,
iñondik ere lorik ezin liteke egin,
ta atsedenikan gabe nekeren-neketan,
ikus uŕen eguna nolaz argitzen dan.

Laŕinaga'n kañoiak gogor ari dira,
eusko mutil eŕenkak, zintzoki, begira.
Bolueta'tik Zumala'k ditu ikusiak
ta arinka an datorgu aŕituz guziak.

Andik onera dabil taldeak ikusten,
etsaien suak ez du iñola bildurtzen,
Begoña jauregia dago gain-gañean,
bertaratzera dua oin alegiñean.

Leiora irten zaigu eta aginduak
ematen ari dala, ango ke ta suak!
Adiskideak deitu diote sartzeko;
bañan ez da jaioa iñun bildurtzeko.

Eudi jasen irudi balen ugaria...!
Beren artean zutik dago gudaria.
Ene...! Zabuka orain, zer du ain nekean?
Bala batek zauritu digu belaunean!

Kentzagun azkar ortik! Nun sendagiĺea?
Tximista bezin azkar, alde biĺatzea!
Jarlekuan etzanda, aurpegia zuri,
ona gure Zumala non dagoen eri.

Zertan ausartu zera balaren tartera?
Galzorira nolatan ortik irten zera?
Ene negar gogoa! Au biotz zartada!
Gizonikan onena gaur zauritua da...

Ona sendagiĺea.—Zer du? Gauz aundia?
—Ez du galduko onekin oraingoz bizia.
Bolueta'ra orain, balaren tartean,
damate min zoŕotzak arturik bidean.

Zumala'k anaiari dio bereala
Zegama'ra laxteŕen eraman zezala.
Oetxo ibilkarian mutiĺak artuta
atsege damakite guziak, minduta.

Durango'n geldi-aldi labur bat egin du
ango gizon andreak egiñaz samindu
Zenbat begi malkotan busti ote dira!
Atsekabea sar du euskaldun eŕira...

Ormaiztegi'n beŕiro zaizkigu gelditu,
sendikoen oroitzak antxen beŕi ditu.
Jaiotzeŕitik gora Zegama aldera
damakite astiro, itun ta minbera.

Ona oean sartu ta sendalariak
diotenez, ez dute lañirik zauriak.
Bañan gero ta geigo makaltzen dijoa,
sukañak eldu dio auldurik gajoa.

Ara burzoratuta gudua zuzentzen ;
nundik jo, nora kendu, diote agintzen.
Buru biotz aietan beti dagon gaña
Euskadi azkatzea da bakar-bakaña.

Ekañi dizkiote gaur elizakoak
ta artu ditu beroki eri gizajoak.
Kanpaien ots iluna ari dan garaian,
zeruratua zaigu atseden erdian.

Ai, Zumalakañegi, gizon biotz-bera
Euskaleñi maitale sutsua izan zera.
Aintza ta omen zure izen ospetsua
euskoen ikasbide agertutakoa!



## VIII

Asierakoen neuŕiz. Ondoren.

Eun urte dira il zitzaigula
euskal semerik onena ;
eskein daiogun eunki-urtean
bere eŕiaren omena.
Txirorik iltzan, nai utsarekin
aberats bizi zeikena,
iru zaldi ta txanpon batzuek
ludian laga zun dena.
Aintza dezagun euskaldun orok
Zumala aundien izena!

Eusko mutil̃ak ikusirikan
Zumala'ren soin il̃otza,
gudara doaz egundo baño
berogo izanik biotza.
Bost urte baŕu, an nun ager dan
euskaldun miña ta lotsa!
Buruzagitzat autatua da
Maroto zital aŕotza.
Auxen bai dala Euskadi'rentzat
aldi laŕi ta mingotsa!

Mil̃a zortzireun eta ogeita
emeretziko urtean,
euskal mutil̃ak ageri dira
Elosu mendi gañean.
Bergara urira eltzerakoan
diote ao betean :
—Salkeria da! Galduak gera!
Gudakin ausi ezean,
atzipetuta garamazkite,
jar̃irik ar̃otz menpean.

Bergara aur̃eko ibar zabalan
ara bi gudal-ozteak ;
itunik daude eusko mutil̃ak,
itxaropenik gabeak.
Erdin Maroto ta Espartero'k
egin dituzte pakeak,
besarkatuaz, zin egiñikan
antxin Fuero gureak
berak gordeko dituztela ta
saldurik euskal semeak.

Fuero zaitze ango eskeintza
zertan geldi da geroztik?
Nun dira gure asaben lege
eta oiturak ordutik?
Estu lotuta ezin azkatuz
gaude ar̃otzen menpetik.
Ostu ziguten gendun guzia...
Zoritxar̃a ager nunaitik...
Ez da gelditzen ezertxo ere
asaben Fuero'etatik!

Ordutik eusko zerua zegon
il̃un astunez beztuta,
negaŕez eusko seme guziak,
Euskadi oso il̃unduta,
gure izkera ia galdua
aŕotzarekin nastuta.
Il̃un biotzak, il̃un sendiak,
itxaropena galduta,
abenda zaŕen edesti bera
aztutze beltzan sartuta.

Bañan Goi-Jaunak kupitu eta
agertu zuan ortzean,
izar dizdikor argi zuri bat
Abando'ko gain-gañean,
Arana Goiri'tar Sabin jaio
zan zoruneko unean.
Zabalik dago bere ikuŕiña,
Euskaleŕi dan-danean
eta indartu da itxaropena
geroztik eusko luŕean.

Jaiki biotzak euskal semeak!
Itxar gaitezen gaur danak!
Ikuŕitz done pean jaŕita,
aztu lengo neke-lanak!
Lenen zatia JAUNGOIKOA du
ta guzien gain dagonak
maiterik gaitu ta LEGE ZAŔAK,
asaben lege sakonak,
azkatasuna bidetik dakarz
Euskadi'ri zorionak.

